Bazen behin, erlojugile zahar bat. Erlojugilea, Etxezuri etxeburutik Bakiüera bitarteko baso ondoko etxetxo batean bizi zen.
Bere betaurreko borobilak, ia-ia sudur puntaraino jaitsita eta petodun galtzak zerrauts fin-fineko geruzatxo bat izaten zutelarik, ibiltzen zen beti.
Bizilekua, lanleku ere bazuen aguretxo lasai eta bihozbera hau, hormetan kokatzen diren ordulariak eginaz bizi zen.
Ikusmena eta eskuak ere, zaharkituak zituen arren, ordulari politak oso egiten zituen. Trebezia handiz maneiatuz gubia ttiki bat, zurari forma ikaragarri ederrak ematen zizkion horrela.
Askorik ez zuen saltzen baina, ofizio-urte asko zituen gizon iaioak.
Bakarrik bizi zen baina basoko abere zein hegaztiak adiskide onak zituenez, beti zuen etxetxo hartan txoritxoren bat solaskide.

Izan ere, leiho barrenean platerkadatxo bat gari edo olo ez zen faltako. Txori politaren otordurako eta baita ere aleren batzuk, basoko gainontzeko laguntxoei eramateko.
Gehienetan, txantxangorria izaten zen erlojugilearen etxeko bisitari. Honek ezin zuenean, burubeltza edo txepetxa ere joango zen, baina inoiz ez zuten bakarrik utziko gizon jator hura.
Alabaina, aspalditxoan, kukua ere konturatuta zegoen leiho hartan mauka ederra zegoela, muxutruk, gainera. Beraz, txantxangorria iritsi orduko platera hustua uzten zuen.
Halere, ez pentsatu txantxangorria, agureari konpainia egin gabe bueltan joango zenik. Ez, hantxe geratzen zen platera hutsik aurkitu arren. Ondotxo baitzekien aitona hark pozik jasotzen zuela norbaiten solasalditxoa, ordulariak egiten aritzen zen bitartean.
Zurezko erloju-kutxa politak eta, kutxaren barnetik kanporatzen ziren egurrezko txoritxoak egiten zituen. Artisau esku haiekin txukun-txukun leuntzen zituen, lixa zatitxoz eta baita ere beira zatitxo batekin.
Txantxangorria, egunero bezala, gizona adeitsu asko agurtuta joaten zen basora.
Platera hutsik zein beterik aurkitu berdin jokatzen zuen, gure txori zintzoak.

Basoko gainontzeko lagunak, arratsaldero biltzen ziren eta txantxangorria moko hutsik ailegatzen zenetan, beste behin ere erlojugilearen etxeko platera hutsik ote zegoen galdetzen zioten.

Baietz-baietz! Azken boladan, gainera, etxeko sapaietan ordulari kutxetan ezartzeko gordeta egoten ziren zurezko txoriek, euren barrenetan zirinak zituztela konturatua zegoela esan zien txantxangorriak.

- "Ño! Horixe bai dela gauza arraroa".
Esan zuen barraskiloak.
-"Ez zoan bada, gauzak ahazten hasiko aitona zaharra, eta platera utzi ezta?
Izan ere, adinean aurrera zihoak gizona eta pertsonak ez ditut gero, gu bezain azkarrak eh!"
Bota zuen harroskillo, erbiak.

Horretan zihardutela, hontzak, honela esan zuen:

- "Hara lagunok; baso bizitza behatzen urte asko eta asko daramatzat, eta inongo duda barik dakit nor den berekoikeria horren egilea. Kukua!"

Bai, halaxe da. Kukua beti dabil inoren lepotik bizi nahian. Kukuak, bere kantaera adeitsu horrekin, mundu guztia liluratzen badu ere xorro-xorro besteen lepotik bizitzeko ahaleginak egingo ditu, ahal duen guztietan.

Jaio ere, ahal duenetan, inoren habian jaioko da. Kabi hartan lehendik zeuden arrautzak bota egingo ditu, habiako txori-amak bera bakarrik elika dezan".

Katagorri ipurtarina, isilik ezin egon eta:

- "Bai, zera!...Txori bakoitzak arrautza kolore desberdinak dituzte baina ! Nola ez lirateke bada konturatuko txori-gurasoak, kukuak lagatako arrautza ez litzatekeela beraiena?"

- " Qiiiii"

Luze bat hasperenduz hartu zuen berriro hitza hontzak.

- " Kukuak, bere arrautzaren kolorea nola-nahi alda-tzeko ahalmena dauka, eta non, zein txori motaren kabia aukeratu duen, berea ipintzeko halakoxe arrautza ipiniko da kabian. Kabiaren jabe den txori gizajoak ezjakinean errun dezan.

- Gero, txita arrautzatik irteten denerako, beste txitak baino handiagoa denez, habiatik botako ditu txori-ama ez dagoenean.

Ikusita nago ni, neure begi haundi hauekin, buru-baltz gaixoa, bera baino hiru aldiz handiagoa zen kuku-kumearentzako janari garraioaren nekeaz zeharo abailduta. "Habian zebilen txita bere-berea zelakoan, kuku xomorro-tranpatiak sartu zion ziria antzeman gabe".

- " Bai, bai, orain ere ez da urruti ibiliko kuku iruzurtia, ordularigilearen etxeko plater hutsaren misterio horretan".

Bota zuen hontz handiak, ziurtasuna duenaren itxura ematen duen bekain haiek betozko jarriz.

- " Noski! Nola esan zenuen zuk, Txantxangorri, ordularigilearen apaletan egina dauden zurezko txoriek zirina zutela hanketan? bada kukuarenak izan daitezke, bertan ezkutatzen delako, ezta?"
Erdi galdera, erdi baieztapen eran esan zuen igelak.

Izan ere, halaxe zen; kukuak egunak zeramatzan bertan bizitzen, batzuetan, egurrezko txori artean nahasten zen, agurea kontura ez zedin eta beste batzuetan, ordulariaren kutxa barnean lokartzen zen sabela bete-bete eginda.

- "Bada bihar bertan aitonari esan, eta gure janari goxoa berreskuratu!"

Esan zuen, xixtrin samar, sugeak.

- " Ez, ez, ez, ni ez naiz inondik ere salatari bat, eta gainera, gizon onbera harengana joaten banaiz, ez da jakiagatik, ni txantxangorria naiz, ez kukua".

Esandakoak entzunda bere lo-lekuetara joan zen bakoitza, ilunkarako solasaldia amaitutzat joaz.



Hurrengo goizean, ohi bezala, txantxangorri fidela, han joan zen erlojugilearen etxeko leihora.

- "Ene ba! Nolatan jarri dizkidazu ba gaur, platerean mahaspasak? Urtebetetzea edo ospatzen dugu ala?" esan zuen harrituta txoriak.

- "Ez, ez. Gaur pozez gainezka nago. Atzo egin nuen salmentan ohi baino diru gehiago ordaindu baitzidaten, laguntxo". - Izan zen erantzuna, ahots goxo-goxoa zuen ordulari egilearen alaitasun aurpegia nabari zelarik. - " Neu ere oraindik sinetsi ezinean nago, hormarako erloju hartan sortu zen sorginkeriaz: Erosleari, erlojuaren ñabardurak erakusten hasi nintzaionean; ordu zehatzetan kutxatik ateratzen den zurezko txoriarekin batera DIN-DON doinutxoa egin beharrean, kuku-kuku egiten zuen. Eta eroslea ere erabat txundituta joan zen erlojuaren salneurriaren bikoitza, pozik baino pozikago ordaintzen zidala esanda".

-"Egia esanda"- Jarraitu zuen aguretxoak, eskua burura eramanda. - "Neuk ere ez dakit erlojuaren mekanismoan zer arraio gertatu den. Erloju kutxaren atetxoak zabaltzen dira ordua punttu-punttuan denean, eta bertatik zurezko txoria irteten da, makilatxoaren puntan, DIN-DON hotsak orduaren arabera kopurua jotzen duelarik: ordu batak baldin badira DIN-DON bat, laurak direnean lau, eta horrela funtzionatzen du hamabiak jo arte. Huraxe bai gertakari bitxia, benetan, bat-batean DIN-DON hotsok, kuku-kuku hotsez aldatzearena. Gaueko iratxo magikoek egin didate sorginkeriaren bat, nonbait. Azrreran-tzean erloju mordoa salduko ditudala ziur nago, DIN-DON doinu hori kuku doinuagatik aldatuko dut eta".

Txantxangorria nahiko mahaspasa janda, bere basoko lagunentzat ere, kolkoan eroan zituelarik, pozik eta harrituta ari zen kontatzen gertatutakoa, iluntzeroko kalakaldian.

Han ziharduten guztiak, zein sorginkeria gertatu ote zen pentsatuz, mahaspasa gozoak janaz.

- " Hara lagunok!"
Esan zuen hontz jakintsuak, bere hizkera sosegatuan.
- " Erlojuak, kutxaren barnean eroaten dituen zurezko txoritxoak, kolarekin itsatsita ezartzen dira, orduak jotzeko, kanpora irteten duen makilatxoari. Eta apustu egingo nuke, gure kuku tranpatia, itsaskorra eman berri zegoen egurtxoan hankak jarrita lo geratu zela, gau osoan".
Hortik hurrengo goizean erlojuaren mekanismoa martxa jarri eta zurezko txoria bailitzan azaldu zen kukua. Atetxoa zabaldu eta makilatxoa bultzatzeko zurezko txoririk ez zegoenez, bera, susto batean esnatu eta "kuku-kuku-kuku" txioka. Bai erlojugilea, eta baita eroslearen harridura polita sortaraziz.
Nahi gabe baina, kuku-erlojuaren asmatzailea izaten lagundu dio aguretxoari. Bai horixe!"

Nonbait, hontz jakintsuak arrazoia zuen. Izan ere, harrezkero, leiho barreneko platertxoa nahaspasaz mukuru egoten da, goizero-goizero baso ondoko etxetxo hartan, txantxangorriaren zain.



Egileak:





Testua:
**XABIER UGARTE BILLAR**
Centro de cumplimiento
Topas
Ctra. N-630 , km 314
37.799
Topas, Salamanca

Marrazkiak:
**KEPA ETXEBARRIA SAGARZAZU**
C.P. Zuera (Zaragoza)
Ctra. N-330, km 539
50.298
Zuera, Zaragoza

